**606 presok** osatzen dute egun Euskal Preso Politikoen Kolektiboa. 606 preso horiek **84 espetxetan** sakabanatuta daude. Preso guzti hauetatik **7soilik daude Euskal Herriko espetxetan**, eta hauek ere 3 espetxetan sakabanatuta daude. Preso kopururik handiena **Espainiako espetxeetan** aurkitzen da, **445 preso politiko** daude 45 espetxetan sakabanatuta. **Frantziako espetxeetan 134 preso** aurkitzen dira 32 espetxetan sakabanatuta. Preso bana daude **Portugalen, Ipar Irlandan, Eskozian eta 4 Ingalaterran**. Honez gain, **11 preso daude etxean eta preso bat Erroman** dago etxean atxilotuta. Preso **1 konfinatua** dago Frantzian, Autunen zehazki.

Beste behin, preso diren gure senide eta lagunei aplikatzen zaien salbuespeneko espetxe politika eta sakabanaketa mantentzea, honek dituen ondorio guztiekin, salatu behar ditugu. **606 presotatik 599 presori** aplikatzen zaien sakabanaketa politika honez gain, guri eta gure senide eta lagunei aplikatzen zaien zigorrezko politika gehitu behar zaizkio: eskubideak urratzen edo baldintzatzen dituzten erabakiak, edo bizitzak arriskuan jartzen dituztenak; egunero espetxean dituzten bizi baldintzak are gogorragoak bilakatzen dituzten arautegiak; euren zigorra bete arren espetxean jarraitzen duten presoak; bidegabekeriak; gehiegikeriak... Jada hainbatetan salatu izan dugu, eta salatzen jarraitzen dugu euskal jendartearen gehiengo handi batek esperantza garai berriak bizi dituen honetan, guk egunero pixkanaka okerrera egiten duen errealitate krudel bat bizi dugu.

Aipatzen dugun egoera gogor honen adibide da estatu frantsesean preso dagoen **Jon Bienzobas** preso galdakarrak, **Saint Maur espetxean** jasan behar izan zuen egoera. Hemorragia gogor baten ondorioz, eta espetxearen ardurakabekeariagatik, ez dakigu ondo neurtutako arduragabekeria ote zen, 11 orduz odol hustutzen egon baitzen, inongo asistentzia medikurik jaso gabe. Hain egoera larrian ospitaleratua izan zen, ezen 36 orduz ospitalean egon behar izan zuen.

Bestalde, Algeciras eta Brieva (Avila) espetxeetan euskal preso politikoei gabonetako postalak **euskaraz idazteko egin dieten debeku zehatzak**, espetxe hauetan jada bizi zen tentsiozko egoerak are gehiago zailtzea eta nahastea lortu dute; noski hau eskubideen urraketaren beste erakusle bat gehio bilakatu delarik.

Jada zigor bat ezarria zuten hiru euskal presori bizi osorako zigorra ere ezarri diete: **Ramon Uribek**, Topas espetxean aurkitzen den usurbildarra, eta **Juan Ramon Rojok**, Darocan preso dagoen irundarra, **aske behar lukete abenduaren 3**tik. Baina, 197/2006 doktrina aplikatuz euren zigorrak luzatu dituzte, **2024ra arte eta 2022ra arte**, hurrenez hurren. **Juan Lorenzo Lasa Mitxelenari** ere aplikatu diote Auzitegi Gorenaren doktrina. Hauek Estrasburgok 197/2006 doktrinak eskubideak urratzen zituela eta bertan behera geratu behar zuela esaten zuen ebazpena

eman ondoren aplikatutako lehen doktrinak dira, gainera.

Azaroko hilabetekarian publiko egin genuen **Pello Zelarain**en kasuaz gain, orain **Aitor Kortazarren kasua**ren salaketa ere egin beharra dugu. Izan ere, **Aitorrek abenduaren 22an bete zuen bere zigorra**, eta hala ere, espetxean jarraitzen du ez berak, ez bere senideek, eta ezta bere abokatuek ere honen zergatirik ez duten arren. Honekin batera Oroitz Salegi presoa espetxez aldatzeko ezezkoa ere kontuan hartzekoa da. Oroitzek bere bikotea eta euren lau hilabeteko semea, oraindik ezagutzen ez duena, dauden espetxera mugitzeko eskatu baitu. Kasu hauek gure senideei aplikatzen zaien mendekuzko espetxe politika noraino iristen den azaltzen digute, beraiek helburu jakin batekin erabiliz eta espetxeei eurekin nahi dutena egin ahal izateko bidea guztiz zabalduz.

Abenduaren 15ean, Etxerateko kide diren bi senidek **gutun bat** helarazi zien **Iñigo Urkullu Lehendakariari**, bere kargu hartzearen ostean. Gutun honetan gure senide eta lagunek bizi duten errealitatearen berri emateaz gain, Etxeratek euskal jendarteak guztiz baztertzen duen espetxe politika honen aurrean, egoera aldatu ahal izateko bere inplikazioa eskatzen zitzaion. Jada ez baitugu justifikaziorik onartzen, jada ez dago aitzakiarik. Eta horregatik, espetxe politika hau desegiten ez den bitartean, honek sortzen dituen ondorioak arintzeko ere eskatu genion.

**Urtarrilaren 12an**, euskal jendartea berriro ere **Bilbon** elkartuko da, Herrira mugimenduak deitu duen Herri Mobilizazio Orokorrean, espainiar eta frantziar estatuei espetxe politika krudel honen amaiera exijitzeko.

Asteburu horretan aurreikusita genituen eta guretzat eta gure senide eta lagunentzat hain garrantzitsuak diren bisitak ez ditugu burutuko. Asteburu horretan gure eskubideari uko egingo diogu eta Bilboko kaleak gainezka egin arte betetzera joango gara guztien eskubideak errespetatuak izan daitezen.

Guztion indarrak batu behar ditugu, aurten Bilbon egingo den manifestazioa ere kolosala izan dadin! Giza eskubideak. Irtenbidea. Bakea. **Euskal Presoak Eukal Herrira!**

**URRIAK 12, DENOK BILBORA!!**



# 1. OSASUN ESKUBIDEA

Jada aipatu dugun bezala, **Saint Maur espetxean** izandako gertakari larri batek **Jon Bienzobas** euskal preso politikoaren bizitza arriskuan jarri zuen. Azaroaren 24an, 19:00ak inguruan Jon Bienzobas sudurretik odoletan hasi zen. Administrazio Penitentziarioa jakinaren gainean jarri zuen bi funtzionarioren bitartez, 10 egun lehenago ebakuntza bat izan zuela sudurrean adieraziz. Larrialdietakoak jakinaren gainean zeudela, sudurra tapatuta izateko eta gelditzen ez bazitzaion berriz ere abisatzeko erantzuten zioten. Bienzobasek egoeraren larritasuna baieztatzeko arduraduna bera ikustera joateko eskatu zien. Baina, ez zen inor agertu. 02:30ak bitarte, hemorragia berriro hasi eta gelditu egiten zitzaion, baina, une horretan hemorragia are handiagoa izatera iritsi zen eta berriro bere egoera larriaren berri eman zien funtzionarioei. Apur bat geroago, funtzionarioen arduraduna Bienzobasen ziegan sartu zen beste hiru funtzionariorekin batera baino ziega guztia odolez zegoela ikusi arren, ez zion kasurik egin eta 20 minutuz sudurra estutzeko esan zion, beraiek larrialdietara deituko zutela bitartean. Egoera hain zen kezkagarria, funtzionario batek arduradunari zerbait egin beharko luketela esan ziola; arduradunak isilarazi egin zuen, ordea.
02:50ean jada egoera oso gogorra zen. Beinzobasek beste presoei laguntza eskatu zien, eta haiek eskatu zuten larrialdietakoak etortzen ziren bitartean norbait egotea Bienzobasekin, konortea galduko zuen beldur zirelako. Jada ahotik odol koaguluak eta guzti botatzen zituen. Egoera benetan larri hau beste ordu betez luzatu zen, benetan kritikoa izatea iristen zelarik. Funtzionarioak benetan kezkaturik eta urduri aurkitzen ziren, arduradunagatik ere gaizki esaka aritu zirelarik, honek ez baitzuen Bienzobasen ziegaren atea irekitzen. 04:00ak pasatxo zirenean, eta funtzionarioek egoeraren benetako larritasuna eta arduradunaren jarrera ikusita ziegako atea zabaltzea erabaki zuten. Bienzobas oso ahul zegoen, gorputzeko tenperatura jaitsia zuen, hanken sentsibilitatea ere galdua zuen eta funtzionarioen artean erizaindegira eraman zuten. Bertan funtzionarioek txandatu egin behar izaten zuten bere hemorragiari eusteko.

05:30ean, egoera oso kritikoa izatera pasa zen. Ahotik eta sudurretik botatzen zituen koaguluak, eta ondorioz ezin zuen ezta arnasa hartu ere. Konortea galtzeko zorian ere egon zen. Funtzionarioak eurak ere oso urduri zeuden, ez baitzuten ulertzen larrialdietakoak zergatik atzeratzen ari ziren, eta Bienzobasengatik oso kezkatuta zeuden.
Goizeko 06:10etan iritsi zen anbulantzia. Erizaindegitik espetxearen sarrera eraman zuten Bienzobas funtzionarioek, eta bertan ordura arte desagertuta egon zen funtzionarioen arduraduna berragertu zen eskuburdinekin eta hankak lotzeko beste burdin batzuekin. 06:30ean iritsi zen Chateauroux ospitaleko larrialdietara. Egoera ikusgarria zen, izugarrizko koaguluak ateratzen zitzaizkion eta odol asko galdu zuenez, eta espetxeak gau horretan izan zuen jarrera ikusita, larrialdietako medikuek erabaki zuten 36 orduz ospitaleratua izatea.

Jon Bienzobasen testigantzak argi eta garbi erakusten du espetxean hasiera batean larriegia ez

den arazo bat, hil ala biziko kontu bat izatera pasa daitekeela mediku asistentzia faltagatik. Etxeratek argi du Saint Maur espetxeak, eta bereziki gau hartan funtzionarioen arduradun zenak, duela gertatu zenaren errua eta ardura; izan ere, instituzio hau da presoen bizitzaren eta osasunaren arduradunak.

Halaber, **Puerto I** espetxean dagoen **Sebastian Gurtubai** presoak ebakuntza bat izan behar zuen abenduaren 10ean, Gurutzetako ospitalean. Baina, auto judizial baten bidez, ebakuntza Cadizen egin behar ziotela jakinarazi zioten. Auto honen aurrean helegitea jarri dute.

**Bordeaux-Gradignan** espetxean dagoen **Arkaitz Agirregabiria** presoak min handiarekin jarraitzen du, hanka batean ebakuntza egin ziotenetik. Hil honen amaieran, azkenean, ospitalera ateratzea lortu zuen erresonantzia bat egin ziezaioten. Hala ere, ezin izan zuen bere espezialista ikusi, berriro espetxera eraman baino lehen.

Hemen aipatzen ditugun kasu hauek argi erakusten duten erabaki arbitrarioek, asistentzia faltak eta osasun eskubidearen etengabeko urraketak gure senide eta lagunen osasuna kolokan jartzen duten, euren osasun arazoak larriagotuz eta areagotuz. Pentsatu besterik ez dago egoera hau nolakoa den gaixotasun larri eta sendaezinak pairatzen dituzten presoen kasuan. Mediku kontrol zorrotzak mantentzea, espezialistekin kontsultak izatea, bizi baldintza duinak izatea oso zail egiten dutelarik. Euren gaixotasunen larritasunak eskatzen dituen baldintzetatik oso urrun beti ere.

Zoritxarrez, gogorarazi behar dugu egoera hau bizi dutela gaixotasun larri eta sendaezinak pairatzen dituzten 13 presok. Gaixotasun larri eta sendaezinak izateagatik aske beharko luketela dioen legislazioa alde batera utzi eta preso mantentzen baitituzte.

## Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamahiru preso politikoak:

**Jesus Mª MARTIN HERNANDO** (Basauri) - ESPETXEA: Zaballa. 1960. urtean jaioa. 2002an atxilotua. Nahasmen eskizo-afektiboa delirio osagarriarekin.

**Iñaki ERRO ZAZU** (Iruñea) - ESPETXEA: Almeria. 1960an jaioa. 1987an atxilotua. SCASEST erako Kardiopatia iskemiko larria. Bihotz kateterismoa: 3 stent ezarria ditu.

**Josetxo ARIZKUREN RUIZ** (Iruñea) - ESPETXEA: A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa: Stent hodi batean.

**Isidro GARALDE BEDIALAUNETA** (Ondarroa) - ESPETXEA: Puerto I (Cádiz). 1951ean jaioa. 1985ean atxilotua. Kardiopatia iskemikoa- (SCASEST erakoa) Prostatako hiperplasia benignoa, Kataratak.

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO** (Gasteiz) - ESPETXEA: Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Gotzone LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ** (Agurain) - ESPETXEA: Martutene. 1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia.

**Jose Angel BIGURI CAMINO (**Menagarai) - ESPETXEA: Martutene. 1955ean jaioa. 1989an atxilotua. Prostatako adenokartzinoma (minbizia).

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS** (Zegama/Elorrio) - ESPETXEA: A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ** (Hernani) - ESPETXEA: Almeria. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitisa.

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN** (Iruñea) - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1964ean jaioa. 1996an atxilotua. Eboluzio luzeko Miopia Magnoa. Eskuineko begiko erretina hemorragia, Ikusmen zorroztasunaren galera, ezkerreko begiko afaquia.

**Jesus Mª MENDINUETA FLORES** (Arbizu) - ESPETXEA: Zuera (Zaragoza). 1968an jaioa. 1991ean atxilotua. Gaixotasun erreumatikoa, afektazio sistemikoarekin. Hori dela eta, aurrealdeko uveitisa . Bi disko-eten (lepoaldean eta gerrialdean, lepoko mina eta ziatikarekin) . Sinupatia aldi errepikariak.

**Aitzol GOGORZA OTAEGI** (Orereta) - ESPETXEA: Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa.

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE** (Larrabetzu) - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.



# 2. BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRA

Hilabete honetan beste hiru preso politikori aplikatu diete bizi osorako espetxe zigorra, eta ondorioz, 88 dira jada 197/2006 doktrinaren bitartez euren zigorra luzatu dieten euskal preso politikoen kopurua. 88 hauetatik 68k oraindik preso jarraitzen dutelarik (erantsitako zerrendan ikus daitekeen bezala).

Beste behin, Azuitegi Gorenaren 197/2006 doktrinaren aplikazioak hiru euskal preso politikoren zigorrak luzatu ditu: Ramon Uribe, Topasen dagoen preso usurbildarra, eta Juan Ramon Rojo, Darocan preso dagoen irundarra, aske behar lukete abenduaren 3tik. Baina, Ramon Uriberi espetxetik atera beharko lukeena baino ordu batzuk lehenago jakinarazi zioten 197/2006 doktrina aplikatu, eta bere zigorra 2024 arte luzatu diotela. Juan Ramon Rojoren kasuan, 2022ra arte luzatu zioten zigorra, eta honen berri bere askatasun data pasa eta gero jakinarazi zioten. Doktrinaren aplikazioak eragiten duen egoera irregularraren eta presoei eragiten dien babesgabetasunaz gain, bereziki aipagarria da doktrina azken orduan aplikatzeak izugarrizko krudeltasuna gehitzen diotela bai presoek eta baita euren senideek jada bizi behar duten egoera gogor honi.

Hirugarren kasua, Juan Lorenzo Lasari dagokiona da. Bere kasuan, ordea, oraindik ez zuen irteera datarik finkaturik.

Hauek Estrasburgok 197/2006 doktrinak eskubideak urratzen zituela eta bertan behera geratu behar zuela esaten zuen ebazpena eman ondoren aplikatutako lehen doktrinaren kasuak dira, gainera.

Era berean, Entzutegi Nazionalak atzera bota zituen pasa den azaroaren 23an, 197/2006 doktrinaren aurkako 24 helegite; hauen artean aurkitzen da, Ines del Rioren helegitea, nahiz eta, Nazioarteko Giza Eskubideen Auzitegiak bere kasuaren aurkako salaketa bat jada burutu duen. Berriro ere, Entzutegi Nazionalak kasuak banaka aztertu beharrean bloke oso baten helegiteak bota ditu atzera.

Bestalde, **estatu frantsesak Jakes Esnal, Frederik Haranburu eta Jon Kepa Parot**i bizi osorako espetxe zigorra mantentzen jarraitzen du, sistematikoki euren baldintzapeko askatasunak ukatzen jarraitzen duen bitartean.

| Izen abizena | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| JON AGINAGALDE URRESTARAZU | Granada | 28 | 10/07/04 | 2014 |
| IÑIGO AKAITURRI IRAZABAL | A Lama | 21 | 10/04/15 | 2021 |
| JUAN CARLOS ARRUTI AIZPITARTE | Cordoba | 23 | 09/03/05 | 2019 |
| JOSEBA ARTOLA IBARRETXE | Daroca | 26 | 06/05/18 | 2016 |
| LUIS MARI AZKARGORTA BELATEGI | Zuera | 24 | 07/10/08 | 2018 |
| SANTOS BERGANZA ZENDEGI | Amurrio | 23 | 11/06/15 | 2019 |
| JOSE ANGEL BIGURI CAMINO | Martutene | 23 | 10/06/09 | 2019 |
| JESUS BOLLADA ALVAREZ | Albocasser | 25 | 06/05/20 | 2017 |
| FERNANDO DEL OLMO VEGA | Almeria | 21 | 12/02/01 | 2020 |
| INES DEL RIO PRADA | Curtis | 25 | 08/07/05 | 2017 |
| JUAN IGNACIO DELGADO GOÑI | Topas | 21 | 12/02/19 | 2021 |
| JOSU Dz. DE HEREDIA RUIZ DE ARBULU | Topas | 26 | 09/10/15 | 2016 |
| IÑAKI ERRO ZAZU | Almeria | 25 | 10/05/16 | 2017 |
| JOSE ETXEBERRIA PASCUAL | Daroca | 21 | 10/03/26 | 2021 |
| ELIAS FERNANDEZ CASTAÑARES | Villabona | 26 | 11/05/27 | 2016 |
| IÑAKI Fdz DE LARRINOA P. DE LUKO | Puerto I | 23 | 08/10/01 | 2019 |
| NICOLAS FRANCISCO RODRIGUEZ | Herrera d | 25 | 09/05/29 | 2017 |
| JUAN MARI GABIRONDO AGOTE | A Lama | 26 | 07/12/01 | 2016 |
| ISIDRO GARALDE BEDIALAUNETA | Puerto I | 27 | 10/02/02 | 2020 |
| XABIER GOLDARAZ ALDAIA | Zuera | 20 | 11/09/17 | 2022 |
| PATXI GOMEZ LOPEZ | Basauri | 21 | 09/04/29 | 2018 |
| RAUL IBAÑEZ DIEZ | Dueñas | 21 | 10/10/08 | 2021 |
| JUAN JOSE LEGORBURU GEREDIAGA | Albocasser | 26 | 09/04/02 | 2016 |
| GOTZONE LOPEZ DE LUZURIAGA | Martutene | 23 | 10/08/11 | 2019 |
| ANTXON LOPEZ RUIZ | Puerto I | 25 | 06/07/24 | 2017 |
| FRANCISCO LUJANBIO GALDEANO | Herrera | 28 | 08/02/17 | 2014 |
| JOSE RAMON MARTINEZ | Logroño | 27 | 09/01/01 | 2020 |
| JABI MARTINEZ IZAGIRRE | Jaen | 20 | 10/09/22 | 2022 |
| JESUS MARI MENDINUETA FLORES | Zuera | 21 | 11/05/04 | 2021 |
| INMACULADA NOBLE GOIKOETXEA | Algeciras | 25 | 08/11/08 | 2017 |
| PEIO ODRIOZOLA AGIRRE | Zuera | 24 | 08/07/02 | 2018 |
| IÑAKI OROTEGI OTXANDORENA | Zuera | 26 | 08/12/17 | 2016 |
| IMMA PACHO MARTIN | Málaga | 21 | 08/03/11 | 2021 |
| JUAN MANUEL PIRIZ LOPEZ | Algeciras | 28 | 09/03/01 | 2014 |

| Izen abizena | Espetxea | Espetxean zenbat urte? | Irteera data | Irteera data doktrina aplikatu ondoren |
|---|---|---|---|---|
| IÑAKI PUJANA ALBERDI | Villena | 25 | 09/02/23 | 2021 |
| KEPA REZABAL ZURUTUZA | Monterroso | 25 | 06/12/30 | 2016 |
| MAITANE SAGASTUME ARRIETA | Curtis | 21 | 09/07/26 | 2021 |
| JOKIN SANCHO BIURRUN | Zuera | 23 | 09/12/08 | 2019 |
| KEPA SOLANA ARRONDO | Bonxe | 21 | 09/10/10 | 2021 |
| TXOMIN TROITIÑO ARRANZ | Curtis | 25 | 06/05/05 | 2017 |
| ANTTON TROITIÑO ARRANZ | Belmarsh | 25 | 11/02/04 | 2017 |
| MITXEL TURRIENTES RAMIREZ | Herrera | 26 | 09/04/10 | 2016 |
| JOKIN URAIN LARRAÑAGA | Herrera | 26 | 09/08/29 | 2016 |
| IÑAKI URDIAIN ZIRIZA | Valencia III | 23 | 09/10/09 | 2019 |
| JON ANDER URKIZU ORMAZABAL | Teruel | 26 | 07/07/22 | 2016 |
| MARITXU UZKUDUN ETXENAGUSIA | Granada | 21 | 09/08/27 | 2021 |
| JOSE FELIX ZABARTE JAINAGA | Puerto III | 27 | 08/04/11 | 2015 |
| GONZALO RODRIGUEZ CORDERO | Herrera | 19 | 13/07/11 | 2023 |
| IÑAKI ZUGADI GARCIA | Murcia II | 20 | 12/04/30 | 2022 |
| JUAN JOSE ZUBIETA ZUBELDIA | Monterroso | 21 | 12/04/30 | 2021 |
| JOSUNE ONAINDIA SUSAETA | Murcia II | 20 | 12/06/09 | 2022 |
| JOSU AMANTES ARNAIZ | Bonxe | 20 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| IÑAKI ARAKAMA MENDIA | Sevilla II | 15 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| SANTIAGO ARROZPIDE SARASOLA | Zuera | 25 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| JOSE MARIA BERISTAIN URBIETA | Puerto III | 23 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| OSKAR CADENAS LORENTE | Murcia II | 16 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| JORGE GONZALEZ ENDEMAÑO | Mansilla | 17 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| MANU GONZALEZ RODRIGUEZ | Sevilla II | 23 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| UNAI PAROT NAVARRO | Puerto III | 22 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| LURDES TXURRUKA MADINABEITIA | Huelva | 18 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| JOSE JAVIER ZABALETA ELOSEGI | Zuera | 22 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| ASIER ORMAZABAL LIZEAGA | Teruel | 15 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| GERMAN RUBENACH ROIZ | Puerto III | 22 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |
| ALBERTO PLAZAOLA ANDOAGA | Curtis | 22 | 16/11/26 | 2026 |
| GABRIEL ZABALA ERASUN | Villabona | 19 | 13/09/27 | 2023 |
| RAMÓN URIBE NAVARRO | Topas | 18 | 12/12/03 | 2024 |
| JUAN RAMÓN ROJO GONZALEZ | Daroca | 20 | 12/12/03 | 2022 |
| JUAN LORENZO LASA MITXELENA | Sevilla II | 20 | Zehaztu gabe | Zehaztu gabe |



# BALDINTZAPEKO ASKATASUNA

Egun 143 euskal preso politikok zigorraren 2/3ak edo 3/4ak beteta izateagatik baldintzapeko askatasunari esker kalean beharko lukete, eta hala ere espetxeraturik mantentzen dituzte. Beste behin Euskal Preso Politikoei salbuespeneko neurriak ezartzen zaizkiela ikus daiteke. 143 pertsonek urteak daramatzate espetxean eta zigorraren 2/3 eta 3/4ak beteta baldintzapeko askatasunean beharko lukete, baina espetxean jarraitzen dute. Hona hemen aske beharko luketen presoen zerrenda:

## ESTATU ESPAÑOLA

1. ABAD SAN PEDRO ENDIKA
2. AGIRRE LETE JUAN LUIS
3. ALMARAZ LARRAÑAGA AGUSTIN
4. ALONSO ALVAREZ RAUL
5. ALONSO CURIECES ANUNTZI
6. ALONSO RUBIO IÑAKI
7. APARICIO BENITO JON KOLDO
8. APEZTEGIA JAKA JOXE KARLOS
9. ARANBURU MUGURUZA XABIER
10. ARISTI ETXAIDE PATXI
11. ARKAUZ ARANA JOSU
12. ARREGI ERROSTARBE JOSEBA
13. ARREGI IMAZ XABIER
14. ARRIAGA ARRUABARRENA RUFINO
15. ARRIETA ISMAEL
16. ASENSIO MILLAN PAUL
17. ASKASIBAR BARRUTIA BIXENTE
18. ASKASIBAR GARITANO MIKEL
19. BALANZATEGI AGIRRE XABIER
20. BALERDI IBARGUREN XABIER
21. BALERDI ITURRALDE JUAN CARLOS
22. BEASKOA RODRIGEZ JON
23. BEAUMONT BARBERENA JOSU
24. BELLON BLANCO ARKAITZ
25. BELOKI RESA ELENA
26. BENAITO VILLAGARCIA MIGUEL A.
27. BERISTAIN URIZARBARRENA, IKER
28. BEROIZ ZUBIZARRETA ANDONI
29. BETOLAZA VILAGRASA GORKA
30. BILBAO BEASKOETXEA IÑAKI
31. BRAVO MAESTROJUAN JOSU
32. CABELLO PEREZ ANDONI
33. CAÑAS CARTON IÑAKI
34. CASTRO SARRIEGI ALFONSO
35. COLOMA UGARTEMENDIA ASIER
36. CORTA CARRION MIKEL
37. DORRONSORO MALAXETXEBARRIA J.
38. EGIGUREN ENBEITIA OLATZ
39. ERNAGA ESNOZ JOSEPA
40. ERRAZTI ELORZA JOKIN
41. ESKISABEL BARANDIARAN ANITZ
42. ESNAL JUANTXU
43. ESPARZA ORTEGA JOSEBA
44. ESTONBA ITURRIZA ARATZ
45. ETXEANDIA MEABE JOSE MIGUEL
46. ETXEBARRIA MARTIN IÑAKI
47. FAGOAGA IGANTZI IÑAKI
48. FERNANDEZ BERNALES JULEN
49. GABIOLA GOIOGANA ANDONI
50. GALARZA QUIRCE LUIS ANGEL
51. GAÑAN RAMIRO GAIZKA
52. GANDIAGA IBARZABAL ESTEBE
53. GARAIZAR SAN MARTIN NEREA
54. GARCIA MIJANGOS JOSE
55. GARCIA RAZKIN SERGIO
56. GARCIA SERTUTXA GORKA

57. GAZTELU OTXANDORENA JOSE MIGUEL
58. GOIENETXE ALONSO IÑAKI
59. GOMEZ LARRAÑAGA ARATZ
60. GONZALEZ PAVON JOSEBA
61. GONZALEZ RODRIGUEZ MANUEL
62. GONZALO CASAL IÑAKI
63. GRAMONT DABID
64. GUEMES OIARBIDE ITXASO
65. GUNDIN MAGUREGI PATXI
66. HERNAEZ BOLINAGA AILANDE
67. HIDALGO LERTXUNDI AIMAR
68. IBARRA IZURIETA BIGARREN
69. IPARRAGIRRE ARRETXEA IMANOL
70. IRASTORZA OTEGI AINHOA
71. JUARISTI ARRIETA XABIN
72. LARRINAGA MARTIN JULEN
73. LARRINAGA RODRIGUEZ ASIER
74. LASA MITXELENA JUAN LORENZO
75. LEGAZ IRURETA ARMANDO
76. LEJARZEGI OLABARRIETA ENDIKA
77. LESENDE ALDEKOA TXOMIN
78. LIZARRALDE PALACIOS ANA
79. LOIZAGA LOINAZ IÑAKI
80. LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO JOSE R.
81. MAJARENAS IBARRETA SARA
82. MARKEZ DEL FRESNO KEPA
83. MUJIKA GARMENDIA FRANCISKO
84. OIARTZABAL UBIERNA ANARTZ
85. OLAIZ RODRIGUEZ JORJE
86. OLANO OLANO JUAN MARIA
87. OLARRA AGIRIANO JOXE MARI
88. ORMAZABAL GAZTAÑAGA JON MARKEL
89. OSTOLAZA IKARAN ENEKO
90. OTAZUA URRESTI IÑIGO
91. PASCUAL MUNETA GARIKOITZ
92. PEREZ DE ANUCITA URKIJO EDUARDO
93. PRIETO JURADO SEBASTIAN
94. ROJO GONZALEZ JUAN RAMON
95. RUIZ JASO ZIGOR
96. SADABA MERINO FRANCISCO JAVIER
97. SAENZ OLARRA BALBINO
98. SAEZ ARRIETA ARKAITZ
99. SALEGI GARCIA OROITZ
100. SALUTREGI MENTXAKA JABIER
101. SAN EPIFANIO SAN PEDRO FELIPE
102. SOLA TORRES JOSE DOMINGO
103. TAPIA ZULAIKA ASIER
104. TERRONES ARRETE JAGOBA
105. TOBALINA RODRIGUEZ JUAN
106. TODA IGLESIA TERESA
107. TRENOR DICENTA KARLOS
108. TXIMENO INZA XABIER
109. UGALDE ZUBIRI ANDONI
110. UGARTE VILLAR XABIER
111. URIBE NAVARRO RAMON
112. URIZAR DE PAZ GERMAN
113. URIZAR MURGOITIO JOSE GABRIEL
114. URRA GURIDI KEPA
115. VARGAS OLASOLO MIKEL
116. VIRUMBRALES AMENABAR ASIER
117. ZABARTE ARREGI JESUS MARI
118. ZARRABE ELKOROIBIDE MIKEL
119. ZELARAIN ERRAZTI JULEN
120. ZELARAIN OIARTZABAL PEIO
121. ZENARRUZABEITIA IRUGUENPAGATE Z.
122. ZIGANDA SARRATEA JOSU
123. ZUBIA URRUTIA IKER
124. ZUBIAGA LAZKANO XEBER
125. ZUBIZARRETA BALBOA KEPA
126. ZULAIKA AMUTXASTEGI GORKA

# ESTATU FRANTSESA

1. FREDERIK HARANBURU
2. INIGO ELIZEGI
3. JACKES ESNAL
4. JUAN CARLOS ESTEVEZ PAZ
5. AITOR KORTAZAR
6. MAITE JUARROS
7. JON KIRRU OTXOANTESANA
8. JON PAROT
9. RAMUNTXO SAGARZAZU.
10. BEÑAT SANSEBASTIAN.
11. MARINA BERNADO BONADA
12. MATTIN OLZOMENDI.
13. GALDER CORNAGO
14. ITXASO LEGORBURU
15. IBAI SUESKUN



# ISOLAMENDU TA BAKARTZEA

Bakartze edo isolamenduaren (estatu frantsesean mitard-a) aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Baina zenbait kasutan, isolamenduan edo mitardean egon ez arren, beste kideetatik bananduta mantentzen dituzte euskal preso politikoak.

Euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan Espainiako eta Frantziako espetxeetan bakarturik dauden preso politikoak:

**Euskal Herria**

Txus Martin (Zaballa)
Gotzone Lopez de Luzuriaga (Martutene)
Jose Angel Biguri (Martutene)

**Estado español**

Sara Majarenas (León)
Jose R. Martinez de la Fuente (Logroño)
Sergio Polo (Córdoba-Mº Aislamiento)

**Estado francés**

Marian Aramendi (Joux la Ville)
Julen Eizagirre (Joux la Ville)
Mattin Olzomendi (Uzerche)
Ibai Sueskun (Tarascon)
Eneko Bilbao (Muret Seysses)

**Otros estados**

Andoni Zengotitabengoa (Monsanto-Portugal)
Fermin Villa (Belfast)
Lander Fernández (Belfast)
Beñat Atorrasagasti (Edinburgo)



# ESKUBIDEEN URRAKETA

**Aitor Kortazar**

2003an atxilotua izan zen preso laudiotarra, bere zigorra osorik bete zuen abenduaren 22an. Baina, hala ere, Fresnese preso jarraitzen du. Ez dute aske utzi, eta ez presoak berak eta ezta bere senideek eta abokatuek ere ez dute ulertzen honen zergaitia zein den. Ez diote bere senideei deitzen uzten, eta ez dakite noiz arte egon beharko duen egoera honetan.
Bere abokatuek jada jarri dute helegitea, baina, gabonetako jaiek atzeratu egin dute epaitegietako lana, eta beraz, baita helegite honen inguruko tramitea ere.

**Anjel Figuero Fernández.**

Anjel Figeroa Fernandez ospitaleratua dago, bi epilepsia-krisi izan ondoren. Algortarra Langraizko espetxetik atera eta etxera eraman zuten 2008ko azaroaren 12an, bertan zigorra bete zezan, espetxeratze arinduan, bere gaixotasunagatik.

**Unai Lopez de Ocariz.**

Valenciatik leku-aldatu zuten bere aitaren hiletara joan ahal izateko, baina, bidean, Madriletik Zaballara bidean, furgonetako leihatilak irikita joan behar izan zuen egiten zuen hotzarekin, eta horrek bere osasunean izan ditzakeen arazoekin.

**Lierni Armendariz, Oroitz Salegi**

Guraso izan aurretik, bikotea Mansilla espetxean zegoen. Baina, haurra izan baino bi hilabete lehenago Lierni Armendariz Aranjuezera mugitu zuten, bertako amen moduluan egon zedin. Ordutik, bi presoak eta euren senideak hirurak elkartzeko saiakerak egin dituzte. Oroitz Salegik Instituciones Penintenciarias-en (IIPP-en) eskaera bat egin zuen. Baina, IIPP-ek bere eskaera atzera bota du. Hau ikusita Oroitzek epailearengana jo du kexa baten bidez, eta egun erantzunaren zain aurkitzen da. Ondorioz, Oroitzek ez du bere semea ezagutzen oraindik. Egun haurra izanda, bikotea bi espetxetan bananduta duten kasu bakarra da honakoa. Egoera erabat bidegabea da, segurtasun arrazoiak argudiatuz, bikote izanik elkarrekin egoteko eskubidea urratzen ari baitzaie Armendariz eta Salegiri, aitatasun zein famili bat osatzeko eskubideak ere urratuak izaten ari dira; eta are larriagotzat jo dezakeguna, lau hilabeteetako semearen eskubideak jaiot-

zetik ukatuak zaizkio, aita bat eta familia bat izateko eta beraz famili loturak edukitzeko eskubideak ukatuz.

**BESTE GERTAKARIAK:**

**Estatu española**

**Algeciras:**

Gabonetako postaletan euskara erabiltzea debekatzen diete. Horrela jakinarazi diete espetxe barruko zirkularrean: "No se admitirán y serán devueltas: cuando se felicite en euskera a excepción de expresiones como "zorionak eta urte berri on", "eguberri on", "errege magoen gutuna", "urte berri, bizitza beri", "badator olentzero", "zortea loteria zozketan", "gabon gaua zoriontzua izan", "gabon zahar zoriontsua izan" o similares. O exceda de tres líneas de texto".

**Brieva:**

Bidaltzen utzi dieten gabonetako postaletan euskara erabiltzea debekatu diete.

**Navalcarnero**

Udan errespetuzko modulura eraman zituzten kideak. Bi hilabete egon ondoren eta baldintzak bete gabe, atera dituzte.

Azaroaren 19an miaketa egin zieten kiroletako materialaren bila. Gainera, kiroldegiko arduradunari espetxeak galdetu zion ia frontenisean aritzen ziren euskaldunak zer motatako materiala erabiltzen zuten.

**Sevilla II:**

Mugaketa berriak paketeetan. Hemendik aurrera 2 egunkari, 2 aldizkari edo bi liburu bakarrik sartu ahal izango dizkiete.

Tentsio une gogorrak bizi dituzte funtzionario batzuekin. Bereziki bosgarren galerian, baina guztietara hedatu da egoera. Araudia aitzakiatzat hartuta, gimnasioa kendu, salan gordeak dituzten gauzak lapurtu eta desagertu arazi dizkiete; probokazio hauek tentsio etengabea sortzen dutelarik. Gauzak horrela azaroaren 14an Grapoko kide bati 72a ezarri zioten eta handik bi egunetara bere berri izatean, jipoitua izan zela jakin zuten.

**Córdoba**

Sergio Polo galeria batean bakarturik dago, lehengo fasean. Urrian bertara heldu zenetik egoera honetan aurkitzen da eta Juntak fasea hau mantentzen dio (Valencia IIn ematen ziren gertakariak direla eta). Bakarrik ateratzen da patiora, beste preso sozial bat dagoelako galeria berean, baina, honek ezin duelako atera, psikologikoki ongi ez dagoelako.

**Villena**

Azaroaren erdialdean euskal preso politikoen ziegetan kirol materialaren bila aritu ziren. Batez ere erraketen bila. Badirudi, funtzionarioen sindikatuak kexa bat sartu zuela euskaldunek ho-

rrelakoak izan ahal dituztelako, eta arma gisa erabiltzeko aukera izan omen dezaketelako.

**Valladolid**

Aurrez aurreko bisitak egin ahal izateko, senideei paper bat sinarazten diete, ukipenezko miaketak onartzen dituztela esanez.

**Fontcalent**

Duela 6 hilabetetik hona, senideekiko txandakako miaketak manetntzen dituzte.

**Miaketa zorrotzak:**

Abenduaren hasieran miaketa zorrotzak egin zituzten Herrera, Jaen II, Almeria, Cordoba, Sevilla, Caceres, Villena, Teixero, Albocasser eta Daroca espetxeetan.

**Estatu frantsesa**

**Joux La Ville**

Emakumeen moduluan arazoak izan dituzte sozial talde batekin. Gainontzeko presoak antolatu egin ziren, eta mehatxatuz eta xantaiekin eta tentsio handiak bizi izan dituzte. Oraingoz arazorik ez Marian Aramendirekin.

Oro har tentsioa igo da espetxean. Ukimenezko miaketak egiten hasi zaizkie.

**Osny**

Azaroaren 29an eris-ak agertu ziren ziegak miatzera. 16 bat presoren ziegetan sartu ziren, tartean Iñigo, Joseba eta Borjarenetan. Pare bat ordu iraun zuen.

**Seysses**

Tentsio handiarekin jarraitzen dute emakumeen aldean. Etengabeko probokazioekin. Ohiana zigortua da eta Itziar ez, beraz patiora ez dituzte elkarrekin ateratzen aktibitateetan elkarrekin dauden arren. Zuzendaritzari planteeatu zaioenean egoera adierazi die ez dela aldatuko espetxearen jarrera.

**Villefranche**

Tentsio handia bizi dute espetxean. Sindikatu batek dena kontrolatzen du. Segurtasunarekin obsesioa dute. Azken asteetan “controleur de prisions” egon da espetxean eta aldaketak espero dituzte. Preso guztiek burututako protestaldiak egon dira egoeraren aldaketa eskatzen



# Askatasunak, espetxeratzeak eta lekualdatzeak

## Askatasunak

**Jon Igor Urresti** (Ondarroa), abenduaren 19an. 15.000 € fidantzapean
**Aurore Martin** (Maule) abenduaren 23an. 15.000 € fidantzapean

## Lekualdatzeak

**DESTINO ALDAKETA**

**Estatu española**

**Gorka Lupiañez** (Durango) Curtistik Topasera

**Estatu frantsea**

**Ekaitz Agirre** (Donostia), Fleurytik Clairvauxera
**Juan Carlos Estevez** (Donostia), Muretik Seyssesera
**Olga Comes** zigorra beteta **Espainaratua**.
**Beñat Aginagalde behin behinekoan Espainaratuak.**
**Jon Rubenach behin behinekoan Espainaratuak.**

**Otros estados**
Abokatuek eskatuta , **Antton Troitiño, Iñaki Lerin, Kemen Uranga y Raul Fuentes,** de Belmarshetik HMP Long Lartinera

**DILIGENCIAS**
**Estado español**

**Iñaki Fernandez de Larrinoa,** de Puerto a Zaballa
**Bea Etxeberria** de Córdoba a Soto del Real
**Iñaki Gonzalo** de Valladolid a Basauri